OTAÑO'TAR PEDRO M'REN'

# OLERKI ONENAK

# ALKAR

IÑAKI DEUNAREN IRARKOLAN
GARIBAY, 28. — DONOSTIA
1 9 3 0

OTAÑO'TAR PEDRO M'REN'

# OLERKI ONENAK

# ALKAR



IÑAKI DEUNAREN IRARKOLAN
GARIBAY, 28. — DONOSTIA
1 9 3 0

# Eŕiko olerkaria

Ez gizon bakoitzak, bakaŕik, eŕiak ere dagozkioen gogoa ba-dute. Askotan, gizonen gogoak estuak, itxiak izan dira, ordea, eta biotza, kutxa josia antzekoa, daramate. Alaitasunak eta naigabeak, edukiaz, baŕu-baŕuan gordeak dauzkate.

Eŕien gogoak irikiigoak, zelaitsuagoak eta zuriagoak dira. Naigabe beltz eta lañutsuak, estuasun samiñak, zorion alaia, iribaŕa eta algara, zokonetik sortuaz, eŕiai biotzetik dijoazkio atarira, eŕez oso, lurpeko ituŕitik ur garbia jayotzen dan bezela.

Gizon ixila, geienetan bekoitz, askotan zitala. Biotzeko naiak, alai edo gaŕatzak, azaltzen ez dituan eŕia, eriotz-ertzian dagoana da ; osasuntsu dana ekaitz aldean kementsu, zigorpean indartsu eta zorionean iribar arpegiaz dager, ordea.

Oñazean antzia, zigorkatuen iŕintz bildurgaŕia, pozaren algara zabaltzen dutenak olerkariak dira, eŕien

sustraietatik datozen olerkari apalak. Oien bitartez eritaren asmo-asnasak, egoki ausnartzen dira.

«Jatoriz, etxe txiroetatik zetozenak ziran «Trobalariak», olerkariak, bañan, goitar argiak sututakoak ziralako «Frobentzako» luralde ederak iñork baño obetoago landu zituzten, nun-nai aberi maitetasuna zabalduaz» (1).

Euskal-eria, biotz-naiaz aberatza dalako, olerkari ugarien sorlekua izan da. Baño ¿zenbat olerkarien, bertsoak ez ezik, izen utsak ere galdu dira? Antziñakoen beririk gutxi, gerokoenak asko ez, oraingoenak bai, guztiak jaso ez-ba-ditugu ere.

Olerki erez, goxo eta politak egin zituan Otaño'tar Kepa M. beriro datorkigu. Arjentina mugabeko zelaietatik, gizadi onen asieran, euskel usain ederaz kutsututako bertso-olerkiak bialdu zizkiguna, orain bigarenez, dagerkigu. Gizona il ba-zan ere, bere euskogogo-sutsua olerki oietan daukagula, esan lezakegu.

Ona, benetan, eriko olerkari iaio bat.

---

(1) Historia política y social de los Trovadores. Víctor Balaguer.

Oietxek eŕiko-olerkarien kemen goitaŕak, beti, zirikatu dute. Eta ez uste, Euskal-eŕian bakaŕik, alderdi guzietan ere baita. Gizon taldeak sutu eta zoratzen dituzten zaletazunak Jaungoikoaganako, sorlekuaganako eta maitetasunaganako zaletasunak oi izan dira. Guda, zitalkeri, gauz zalak eta ekintz aŕigaŕiak maitetasuna, abeŕia eta siñismenagatik sortu dira. (2) Eta olerkariak, iñork baño obetoago biozkada oiek ausnartzen dituzten ezkero, iñork baño obetoago azaldu eta argitaratzen dituzte ere.

Maitetasunaren edertasun zoragaŕia nork olerkariak bezin indartsu abestu? Siñismen argi egiazkoaren bizitasun eztitsuak, gizonen begietara, olerkariak bezin ondo nork aurkeztu? Abeŕiaren eriotz-miña, sorteŕiaren kate-zauriak, izkeraren bizi negargaŕiak, nork olerkariak baño gartsuago eta gaŕatsaguago eresi?

Maitetasunaren alaitasun eta naigabeak, Laŕalde, Belzuntze, Gilbau, Salabeŕi, Elizanburu eta Aŕesek eusko olerkariak, apain eta txukun, abestu dituzte.

---

(2) Estudios literarios. Lord Macaulay.

Gogoaren antzi meak, asmo zerutaŕez jantzitako bertso-olerkietan zabaldu dituzte Detxepare, Zaldubi, Bera, Eŕenderi, Lekuona eta Elurmendi'k, ziñismen sakoneko ertilari trebeak. Euskal-eŕiko zorigaitzak, lege-zaaŕari jaurtitako kateak, Euskeraren izate eta zabalkunde ergala, Aŕese-Beitia, Arana-Goiri eta Jauregi'ri eresi negargaŕiak sortuasi dizkate, odola eusko zañetan sutuaz eta itxaropena biotzetan piztuaz.

Siñismenak, sorteŕiak maitetasunak ere Otaño olerkariaren bertso abestietan bizitasuna eskeñi dioe. Maitetasun garbia, siñismen sendoa eta eusko zintzotasun kementsua bere olerki guzietan dagerkigu. ¡ Eta arigaŕia !

Euskal eŕitik uŕuti bizi izan du zan, Arjentina'ko neuŕigabeko aran aspergaŕietan artaldeak zaintzen, artzai zintzoa bezela, baño bere asmo eta nai guziak sorlekuan, beti, zarabilzkien.

«Ainbestereño tristetutzen
Eremu zabal oietan, [naiz
Edemu zabal oietan,
Arbola, mendi eta eŕekak
Falta diran zelaietan.»

Eta amaika bertsoetan naigabe beltz au erakusten digu ¡ atzeřiko bizitza ain zitzaion neketsu!

«Tu proverai si come sa di sale
Lo pane altrui, e come e duro calle
Lo scendere e'l salir per l'altrui scale» (3).

«Atzeřiko ogia samiña, ařotz naguzipean lanari jardutea gařatza» Itali'ko olerkari ospetsuanak, Dante agurgařiak, min zeriola, abestu zuan abeřitik aldenduta zegoanean.

Baseřitxoa, inguruko basoa, auzoko mendiak begi tartean josiak zaramazkian olerkariak, eta «ombú» zuaitz baten babesera juan da biotzeko antsiak abestutzen zituan.

«Orain artzantzan Ameriketan,
*Ařantxo* baten onduan,
Eguna pasa lařian eta
Jiratzen naizen orduan,
Nere begiak gozatzen dira
Aldameneko *ombú'an*.

---

(3) Dante. Divina Comedia: Paiso, e. XVII.

Nere lagunik maitatuena
*Ombu* laztana, zu zera,
Argatik nator zure kolkora,
Ni malkoak isurtzera,
Irudituri naramazula
*Atariko intxaurpera*...
Beti izango zaitut goguan,
Bañan joan nai det ostera,
Euskal-lureko arbolpe artan
Nere ezurak ustera.»

Ez uste, ordea, nolanaikoa zala Euskal-erirako zuan maitetasuna. Euskal-erian zati berezirik ezagutzen etzuan, era bat eta osoa sorteria aitortzen zualako, Bidasoa aruntz eta onuntz bizi geranok aldenduak gaude, tamalez. Aien abesti, olerki, edestiak eta oiturak atzerikoak zaizkigula, esan genezakegu. Euskotaren anai maitasuna, alkaren ezaguntza olerkari apal eta biguñak, urutiko zelai txiro eta alegeetatik, dei beroaz eskatzen zigun.

«Arbola baten zañetatik
Sortzen diran landariak
Bezela gera, Bidasoa'ren
Bi aldetako jendiak;
Berdiñak dira gure jatori

Oitura eta legiak
Ama Euskerak magal berian
Azitako senidiak.»

Biotzeko nai goxoenak, kutun eta laztan estitsuenak gure izkerarentzako gordeak zeuzkan, baño. «Aiton gizagaisoa»'ko alai eta ilunak tanto bat-batera, dituan olerki xamurak irakuri ezazu. Malko samiñak Euskera maitatzale aitonak ixurtzen ditu zotinka dasan bitartean

«...Laister ilko da
gure Euskera gaixua,
...galdua dago
gure Euskera gaixua.»

Itxaropen alaiak, ordea, indar kementsu gure olerkariari eskeintzen dio agure minduari bizkor erantzuteko:

«Jauna alaitzen asi gintezke
Euskera maite degunak;
badatoz, uste ia betiko,
galdutzat zeuden egunak.»

Igarleen usaia itz oiek daramate; euskera aldapa gora dijoakigu pizkabanaka ba-da ere. ¿Noiz, orain

bezela, ain poliki apaindu eta ofaztu dute euskera idazleak? Gazteak, ain gogor eta bulartsu noiz euskeraren alde jardun dira, gaurko egunez bezela? Gazte oiek olerkarien dei estua entzun dutela, esan leike:

«...Denak nai dute,
lege-zafak dakafena,
eta ez dute ezagutzen
Izkuntza dala aufena.

Miru gaiztoak menderatutzen
duten bezela uxua,
etzazutela iltzera utzi
gure Euskera gaxua.»

Maitasun garbiari eta siñismen sendoari, ere, Otaño'k olerki beruak eskeñi zizkien. «Elizakoak» eta «Amatxo laztanari» deritzaizkion olerkietan garbi bere asmoak dagerzkigu. Guraso eta sortefiari agur egiñaz, aldendu zanean, baserriko ate buruan.

«Itz baterako au da
eskatzen zaizuna;
Izan zaitez non-nai
Beti euskelduna.»

aitaren aoetatik entzun ba-zituan?

## UT PICTURA, POESIS

Margolarien edo pintatzaleen antzera olerkariak, ere, bertso-gaiak apainduta eta txukunduta, gogoaren begi auŕera azaldu bear dituztela, esaera zaaŕak dio. Uŕutiko mendiak urdiñez jantzi, aran eta zelaiak orlegiz apaindu, baseŕiak telatu goŕiaz estali eta argi alaia, zuri garbiz, egi itxura emateaŕen margolariak asmatzen dun bezela, olerkariak ere urdiña, orlegia, goŕia eta zuria antzeko gaiak erabiĺi beaŕean dago, irudiei ipintzeko. «Olerkarien margo motak, itzak dira. Itzen bitartez, gai eder eta politak gure almenean bizi azi bear ditu. Au egin ezik olerkaria danik ezin iritzi oiala garbi eta margoak eskuan eukitzeagatik, bakaŕik, margolaria ez deritzaigun bezela» (4).

Otaño'ren olerkietan gauz atsegingaŕi eta edertasunak aurkitu ditugu. ¡Ain egoki olerki gai guzia, egiantza emanaz, apaintzen ditu! Egiz, margolari azkaŕa dala aitortu leike. Auxe Otaño'ren trebetasun txalogaŕiena deritzaigu, «Aiton gizagaixoa» olerkian erakusten digun zaaŕa, bide baztaŕian exerita, ez ote degu begi auŕean ikusten? Guda

(4) Estética. Benedicto Croce.

gelgaŕiak dakarkian negar, naspilak, deadar samiñak, laŕitasunak, su-gaŕak ez ote daude, bikain eta bizi-alajaña, esanak «Maitasun»'eko burni gogoŕa bezelako, bertso kementsuetan?

«...geŕa soñuko adaŕak,
deituaz gazte sasoi dutenai,
utzirik ume ta zaŕak...
...bukatzen dira dame kutunen
abo politeko paŕak,
itzaldurikan begi alaien
dizditzaŕizko txingaŕa.
Aitonak makur, amak auldurik
ta gozeak iltzen auŕak,
nola ez daukan zer kendurikan
len tititsu zan bulaŕak,
zergatik kolko oparotsuak
gelditu dira medaŕak.
Lengo arto ta gari soroak
estalitzen ditu laŕak,
eta etxean ziran jangaiak
kiskali su eta gaŕak.»

¡Itzak, olerkariarentzat, margoak ba-dira, oraingoan bai Otaño'k margo bizaiz guda kalteak erakusten dizkigula!

Bertsolari iaio eta jatoŕen ateraldi aŕigaŕiak, asmaketa egokiak, galdera zoŕotzak eta erantzun paŕagaŕiak, zeñek ez ditu entzun? Bertsolari, banaka batzuk, olerkariak izan dirala aitortu bear. Gai edeŕak, asmaketa bizian ari bear danean, beti erabiltzea, zailtxoa da, noski. Batzuk txukun azaltzen dira nun-nai, ordea; beste batzuk loitsu, bee-aldera dijoazela maizxamar. «Modena»'ko olerkari zigorlariak idatzi zuana bertsolariengatik ere esan leike;

«S'i udiam gli usignoli, al primo albore,
E gli asini cantar versi d'amore» (5).

«Uŕetxiñolak eta astoa, egun sentian, maitasun bertsoak abestutzen entzun zeikien». Uŕetxiñolaren antzera atsegin eta alai abesten duten bertsolariak ba-ditugu; aŕantz itxuziak egiten dituztenak, ere, baita.

Oŕegatik, argi eta garbi Otaño bertsolari utsa dala aitortzea, bildur zaigu. Otaño, olerki guzietan txukun,

(5) Juicio Crítico sobre Petraica. Lord Macaulay.

zuri eta atsegingaŕi azaltzen dan ertilaria da. Goimaĺako olerkaria dala ere ezin esan, zuzen etzi beaŕean gaude-ta. Artzaintzan urteak igaro bitartean, ikastoletan almena apaindu eta oŕaztu bazuan, olerkari agurgaŕiagoa izango zan, noski.

Askotan bertso argal eta beartsuaz, asmaketa ikusgaŕiak eta irudi aŕigaŕiak, jazten zituan. Ain gai edeŕak apaintzeko, itz-neurtuetan, moztxo gelditzen zan. «Donostia», «Amets bat» eta «Elizakuak», asmaketa irudiaz aberatzak dira. ¡Txukunago jantziak eta apaintxuago oŕaztuak izan ba-ziran!

Utsune eta eŕuak olerki oietan aurkitzea, ez da zaĺa. Orain beŕogei urte, Amerika'ko bakartasunean eta artzaintzan zebiĺela idatziak dirala uarte, irakurleak.

«Aiton Gizagaizoa» eta «Amerikako Panpetan» irakuŕi-ta Otaño olerkaria zala aitortu beaŕean izango zera. Gogo sakonetik, kemen goitaŕa sortze zitzaiyola berak erakutzi zigun :

«Itotzeko bilduŕez
Uzteko ugari,
Nola esango zaio
Aŕai bizkoŕari?
Ez dediĺa egaatu

Uso azkarari,
Eta ixildutzeko
Eretxiñolari?»

Amoraia jatoriz
Dijua urara,
Uso ta aranoak
Odoien aldera;
Otsua sasira ta
Satora lurpera.
Mitxirika argira
Ta auntza larera.

Iñon ezin bizirik
Ez esna ta ez lotan;
Ni lertuko nintzake
Ez kantatzekotan.»

Orelako olerkari asko eta euskeltzale sutsu Euskaleriak izan ba-litu, euskera zaarak argal eta mintsu egon bearean, edera aberaztasun eta zorion ugariaz inguratua aurkituko genduan.

AITZOL'dar J.

# BATASUNA

Jakin nayian zein dan munduko
Izkuntzarikan zaŕena,
Au da jakintsu askok zentzuba
Nekaturik dakaŕena:
Len azaletik ibiltzen ziran,
Badatoz sartzen baŕena
Ta gaur geyenak aitortzen dute,
Euskera zala auŕena.

Geroztik sortu ta indarturik
¡Zenbat izkuntza ez da il,
Gelditurikan lurperaturik
Betiko mutu ta ixil!
Euskera galtzen sayatu aŕen
Asko beŕitxu ta zirtzil,
Indar beŕiyak artzen ari da,
Gazte bat bezela dabil.

Mundu guztiyan arkitzen diran
Jakintsurik aundiyenak,
Ta, batez ere, orain Londres'en
Eta Berlin'en daudenak,

Eman dituzte Euskeragatik
Albisterikan onenak;
Burlatzen duten ergelak dira
Ezagutzen ez dutenak.

Bañan, aldebat utzi ditzagun
Ezjakiñen txarkeriyak,
Ta euskaldunak izan gaitezen
Prestubak eta aundiyak.
¿Zer egingo du, maisu zitalak
Agintzen duten eŕiyak?
Iluntasunak kenduko ditu
Datoŕen egun beŕiyak.

Bidasoaren bi aldeetatik
Anayak deika elkaŕi,
Ari dirala, jakindu degu
Ta bilduko dira saŕi:
Lengo oitura onak ostera
Nai lituzteke ezaŕi,
Ta «batasunak» bakar-bakaŕik
Litzake oyek ekaŕi.

Gure Euskal-lur eder maitean
Bizin diraden anayak,
Elkarganatu ditu odolak
Ta «denak bat» izan nayak;
Buenos Aires'en bildubak daude
Euskera indartzeko gayak;

Poztu gaitezen. ¡ O, euskaldunak!
Badatoz egun alayak.

«Denak bat» egin eta sayatu
Gaitezen alegiñian,
Gure izkuntza eta oiturak
Ipintzen beren oñian:
Guztiok egiñ gentzake zerbait,
Bakoitzak aldun añian,
Jaungoikua ta Euskera jartzen
Gauza guztiyen gañian.

Batek egiñ nai luken guztiya
Ez dauka (i) aukeran eta
Borandatia badaukat baño,
Asko eznezake eman:
Liburutxo bat izkribatu det...
Gipuzkoa'ko izkeran,
Zuek esango dezute, ondo
Edo gaizki egin deran;
Irakurliak, barka zazute,
Ezbadago txit naieran,
Eta lagundu dezagun alkar,
Ia indartutzen geran.

# DONOSTIYAN UXOA

## SARITUA

Nola gizon guztiyak
txit aundiyak diran
eta oso txikiyak
denbora berian,
batek asko pentsatu
eta ondorian,
igartzen diyo nola
gauz'asko lurian,
ainbeste itsasuan
ala legorian
egonagatik anbat
gugandik urian,
Jaungoikuak daduzkan
betiko gordian.

Argatik dago txutik
betiko galdeera:
—¿ Zergatikan da gauz'au

beste ori zer da?
—Iñoiz erantzuteko
izaten da era,
gizona iritxi da
zerbait jakitera,
ilunpetatik gauza
asko du atera;
bañan jakintsunetan
geyena dan bera
erortzen da maizena
galde egitera:
—Zergatikan da gauz'au
beste ori zer da!

Ixiltzen diranian
gizon jakintsunak,
izketan asten gera
gutxi dakigunak;
ayentzat bide asko
daude txit ilunak,
estrapozoz betiak
eta trabadunak;
guretzat beŕiz denak
liraiñ ta legunak,
gañera geren ustez
oso ezagunak;
ez bestek erakutsi
izan dizkigunak
edo ikasbiretik

datorkizkigunak,
baizikan ametsetan
sortzen zaizkigunak.
Naiz faŕa egiñ iñoiz
aditzen digunak,
beti izango dira
guretzat lagunak.

Argatik, galdetzian:
¿Donostiya zer da?
Ikusten da lenago
diyotan bezela,
jakintsu aundi denak
ixilik daudela,
edo geyenaz ere
mintzatzen dutela
lan ori erabaki
eziñ ditekela;
ametsgiĺiak beŕiz,
kolpian, berela,
bere erantzuera
ematen dubela
esanaz;—¿Donostiya?
Kantauriko perla,
ta beste izen asko,
eŕezki, oŕela,
txit ondo datozenak
jartzen ditubela.

¡Nork ukatu doaya
berez datořela!

Naspilaturik beren
pisuz eta neuřiz,
mundu guztiya bete
nai dutenak egiz,
bette oi dutena da
kopeta izerdiz,
gauzak ezagutzeko
ařeta geyegiz.
Nik agurtutzen ditut
begiramen aundiz,
naiz berak fařa egiñ
gure umekeriz;
or konpon ditezela
beren jakinduriz;
neretzat Donostiya,
ara zer dan beřiz:—
Uso bat biralduba
Noe'ren Arkatik,
iñon legořik bazan
jakitiagatik,
pixti leyal gaxua
al zuben lekutik,
izpi bat txintxilika
zubela mokotik,
aditzera emanaz
argiro gogotik,

azaltzen ari zala
luŕa ujalpetik,
biurtu zan atzera
urditza artatik,
lokabetuaz denak
zeukaten dudatik.

Putzuban emanikan
len ainbeste jira,
uso ona biraldu
zutenak urdira,
noizbait iritxi ziran
Ararat-mendira,
lenbizi egokitu
zan legortegira.—
Noe buruzariyak
irtenik erdira
ta eskeŕak emanaz
Zerura begira,
itza bireztu zuben
bere familira,
esanaz;—Sem ta Jafeht.
egun'etoŕi da
ta Jaunak agindubak
egiñ bear dira.
Zeron emazteakiñ
biyak uŕutira
joan bear dezute

bizitza beŕira;
Kan ta bere andrea
nerekin baitira;
ait'amak zaŕak gaude
ta izan kupira,
ez lotsikan biraldu
gure aurpegira.
¡Oraiñ bendiziyua
ar zazute, tira!
—Eta agindu zuben
beste alderdira:
—Pixti denak bijoaz
alduten tokira.

Aiñ leyal legor bila
joan zan egaztiya,
ekaŕirik birpiztu
zituben izpiya,
pixti denak bezela
izan zan utziya;
bañan argitasunez
nola zan jantziya,
auŕera eramanik
bere iritziya;
laster igaro zuben
legordi-guztiya.
Oroitutzen zan leku
on bat ikusiya
eta bera izanik

txit egalariya,
alderdi artara zan
berela abiya,
topatzera goguan
zedukan tokiya.
Iritxi zubenian
beŕiz Kantauriya,
ementxen autu zuben
beretzat kabiya:
etzin zan, eta ez da
geroztik jaikiya;
begira, non daguan
gaxua jatxiya:
len uxua zan eta
oraiñ Donostiya.

Buruba ageri du
gaztelu oŕetan;
Gorputza Donostiko
etxe edeŕetan,
ta isatsa Loyola'ko
ibar politean
eskuiko egua
Ategoŕietan
eta ezkeŕekua
Antiguan bertan
edo alde artara
dauden birietan,

Beste pixti batzubek
egope onetan
ikusten dira iñoiz
uda-egunetan,
beren lumak bustiyaz
Kontxako bagetan
pozkidaz dabiltzala
jostatzen uretan...
Sartu gabe kondaira
luziaguetan...
ora nere iritziz
Donostiya zer dan.

## ELIZAKUAK
## EDO ¡AU MUNDUA!

Ilunak nabarturik
bideko tiñua
zeukan ,ta ixildu zan
txorien doñua:
odei tartetik iñoiz
senti zan, bañan bian
sortu zan lañua;
argi baten aurétik
kolpez eŕañua
azaldu zan ta laxter
(eliza siñua)
gugana iritxi zan
txintxaŕi soñua.

Txilin, txilin jo zuben
beŕiz txintxaŕiyak,
aditzera emanaz
gauza mirariyak,
beti txit onak, bañan
iñoiz mingaŕiyak,
izaten diranian

gaitzak ekaŕiyak.
Oso tristetu ziran
gure aurpegiyak
ta beriala azaldu
zuben iIargiyak;
eskuban arturikan
buru estaĺkiyak,
luŕian belauniko
an geuden jaŕiyak
ta parte-artu zuben
Zeru-gau argiyak:
¡an pasa biar zubeñ
Jaungoiko aundiyak!

Eukaristi Santua
jaŕiya Maisuak,
zijuan pasatzen, ta
beraren pausuak,
umiI agurtzen ditu
kristau fedetsuak;
ta nola emen ala
geron geyentsuak,
gertatzen diranian
alako kasuak,
burubak makur eta
biyotzak jasuak,
baŕendikan egiten
dira eŕezuak,

meserez izan ditzan
miñ duben gaxuak.

Pentsatutzen munduko
izate aulian,
kasikan lorik egiñ
ez nuben gaubian,
ta uŕengo goizian
zortziyak aldian,
joan nintzan Jauna artu
zunaren galdian.
Ezkaratz zar batera
sartu ondorian,
kanta otsa senti zan
etxe baŕunbian,
guztizko doñu alai
eta edeŕian.
Pozez bera aditzen
negola an bian,
biziro beŕi onak
ziraden ustian
gizon bat azaldu zan
ate brinbalian,
eta nere galdeera
egiñ niyonian,
malko bi zerorizkan
bere masalian
ta ziyon:—ortxen dago
gaxu'iyilian!...

—Bere ama maitia
zedukan oyian!
Añiturik gelditu
nintzayon auñian
ta kanta otsa nola
senti zan artian,
esan niyon:—¿or nola
daude umorian,
agoniya arkitzen
bada etxe berian?
Ori ez da kabitzen
kristauben legian;
eta erantzun ziran
erdi negañian:
—¡Ai! *Or* famili asko
nola bizi diran,
anbat jakingo ere
ez dute ordian
desgrazi au arkitzen
danikan gurian!
Eziñ biziyak gauzka
aiñ bakardadian,
ixil ixilik geren
baztartxo pobrian,
beste guztiyetatik
kasikan gordian,
ez bagiña bezela
jayuak luñian!...

Iltzia obe izan
liteke, aldian,
bizi ez d'anarentzat
itxura obian...!
—¡ ¡ Zenbat onlako oi da
mundu zabalian!!

# AITONA GIZAGAIXOA

(LAROGEI PESETAKO SARI BAT ETA BITEZAŔA AŔASATE'N IRABAZITAKO MOLDAERA

Udaberiko usai gozozko
iḷunabartxo batian,
Donotiyatik uŕuti gabe
uri ontako partian,
baseŕitikan onontz datoŕen
bidetxigor politian,
sagar ta gaztain, aritz, eloŕi,
uŕitz ta lore tartian ;
azpi aldian eŕekatxua
marmariyaz ostopian,
eguzkiaren azken dizdizak
aruntzko mendi tentian,
kuku ta beste txorien kantak
baso guztiak betian ;
kabi batian lau txorikume
txiḷar tarteko otian.
Gauz abei denai begiratuaz
emen, gure lur maitian,
«iñon ez dago onelakorik»
esanaz nere artian,

netoren, eta alako batez
jiratxo bat ematian,
aitonatxo bat arkitu nuben
eserleku arlotian,
berekin zeukan penaren kargak
lurera iya botian.
Garai ta leku pozgari artan
gizon ura ikustian,
alaitasunez inguratua
aiñ egoera tristian,
bereganatu nintzayon zerbait
itzegiteko ustian.

Iruditzen zait gaur oraindikan
bera ikusten naguela,
ari tontortxo baten gañian
exerita daguela;
belaun nekatu bien tartean
uritz makil bat dubela,
beraren puntan ipiñirik len
buruan zuben txapela,
bi eskuakiñ gogor elduaz,
kontu egiñaz onela,
eta kokotza oyen gañean
lotan balego bezela.
Nola jostatzen pil pil zebilen
egoaizetxo epela,
buruko ile txuri bakanak

egara zijoazela
esan zeikian, uste det berak
nabaitutzen etzubela.
Antxen nenguan, bere onduan,
zer egiñ ez nekiyela,
laguntzarik nai zuben galdetu
edo aldegiñ bestela;
itzegiñ zuben, eta kezkatik
atera nintzan berela.

Asnas lodi bat irten zitzayon
petxu estutik jasua,
ta lenbiziko au esan zuben:
—¡¡Nere Euskera gaxua!!

—Esan onetan ezaguturik,
aitonak zedukan miña,
erantzun nion:—Jauna, Euskera
ez dago aiñ aldegiña,
oraindk ere lur maite ontan
bada zeñek itzegiña...
—Bañan nere itz motxak etziran
bera lasaitzeko diña,
ta zion:—Ondo ikusitzen det
datorkigun erasua;
ez da biziko, laster ilko da
gure Euskera gaxua.

Jauna, ez bedi orla tristetu;
ez dago Euskera juna,
¿ez du nabaitzen inguru ontan
daguen alaitasuna;
ez du ikusten ez dala gaitza,
baizik dena osasuna;
Euskal-eŕiko txorien kantak
ez dago pozez entzuna?
—Bai, len bezela sayatzen dira
kukua eta soxua;
oyek or daude, bañan galdu da
gure Euskera gaxua.

Jauna, barkatu bizait, beŕiro
gogor egiten badiyot;
Euskera oraiñ baño txaŕago
egon dala derizkiyot;
ez du ikusten nola izkuntza
ontan ari geran biyok?
Gaur Donostiyan ez dakiyenik
ez du aitortu nai iñork.
—Bañan erderak betiak dauzka
eŕiya eta basua;
alpeŕik zabiltz, galdua dago
gure Euskera gaxua.

Jauna, alaitzen asi gintezke
Euskera maite degunak;

badatoz, ustez iya betiko
galdutzat zeuden egunak;
len aintzakotzat artzen etzuten
damatxo txapela-dunak,
gaur erantzuten dute biotzez:
—«gu gerade euskaldunak»
—«Bañan ainbestek jartzen diote
traba edo arazua...
¡Nola nai dezu indartutzia
gure Euskera gaxua!

Jauna, badaki, nola lenago
ez genekiyen erderik,
eta guraso leyal on askok
umiak argitu nairik
aldi batean ¿non ikusi da
izkuntz au gabeko mairik?
Oŕengatikan dago Euskera
lotsaz txokuan gorderik.
—Bukatu bedi oitura oŕen
epea edo plazua;
izan zazute maitexiago
gure Euskera gaxua.

Jauna, ez beza negaŕik egiñ;
esan diotan bezela,
ikusitzen du lenago baño
askoz obeto gaudela:
luza lezake, txit zaila da-ta

oso indartzen berela...
—Ontan malkuak kolpez kendurik
erantzun ziran onela:
—Nik erderarik ez dakit, eta,
nere iłobak... ¡au sua!
ni bezelaxe burlatzen dute
gure Euskera gaxua.

Au mintzatzian arkitu zuben
nonbait aiñ estu bañena,
non altxarikan eserlekutik
alzezaken azkañena,
esan ziran:—Ai! Denak nai dute,
lege zañak dakañena,
eta ez dute ezagututzen
izkuntz dala auñena.
«Miru gaiztoak menderatutzen
»duten bezela uxua,
»etzazutela iltzera utzi
»gure Euskera gaxua».

Eskuarekiñ agur egiñaz,
arturik makiłatxua,
etxe aldera abiatu zan
aiñ euskaldun doatsua:
geldi-geldika jañaitu nion
neurtuaz bere pausua,
iłobetara biurtu zediñ
aitona gizagaixua.

# ANAITASUNA
## ( P A K E A )

**LAROGEI PESETAKO SARI BAT ETA BITEZARA OYARZUN'EN IRABAZITAKO MOLDAERA**

Ikusirikan aŕai zataŕak
aŕapatutzean aula,
eŕuki gabe, bizi-bizirik,
sabeleratzen duala;
gisa berean pizti gogoŕak
menderaturik argala,
onen kaŕasiz kupitu gabe
puskatzera daramala;
gizonak oei begiraturik
esaten du bereala,
ikaraturik nola indaŕak
daukan agintea ala,
«aŕazoyaren argirik eta
zentzu gabeak dirala»;
ta sinisturik, bera askozaz
biotz obekua dala
jakiñik Jaunak zentzua eta
kupira eman dizkala,

pentsatutzen du alako lanik
egingo ez lukeala...
Aitortutzen det, lotsa aundi bat
bañenen sartzen zaidala,
iduriturik iñoiz gizona,
piztiak beziñ zitala.

Añazoyaren argi gabeak
nola diran pizti denak,
ta ezagutu ez litzateken
ematen dituzten penak,
oyek dirade barjakindeko
kargatik libre daudenak;
bañan ez dira orla arkitzen
gizonikan lotuenak,
atzera dauden basati, edo
salbajerik galduenak,
zergatik diran Jainkoak bere
antzez egiñ zituenak
Alaxen ere barkatzekuak
dira okeñik geyenak,
ume traketsak beste gauzarik
ez diran gizon ayenak.
¡ Nola añitu, ez egiteaz,
obra on eta zuzenak,
Jesukristo'ren Lege Santua
iritxi etzayotenak!

—«¡ Aita nerea, barka zaiezu,
ezdakite zer egiñ duten!»
—Begira emen Maisu aundiak
nola digun erakusten,
ezaguerarik gabeak zenbat
gaitz gutxiago dituzten,
sayatu aren beste iñoren
zaiñ eta ezurak austen.
¿Nor arituko da itxua ez
ibiliagatik zuzen?
Bañan gu oitu baldiñ bagera
txikitandikan ikusten;
zuzen bidea jaraitutzeko
argidotu baginduzten,
argaltasun ta zitalkeriak
¿zertan ez ditugu uzten?
Ondamutasun ta griña txarai
¿zergatik diegu eusten?
Gera-kontua beste gauzarik
iya ez degu entzuten...
¡ Agintariak, begira gero,
zer lan egiten dezuten!

Kristau jatorak izanagatik
asko daude gelditurik,
beren bizitza ta izaerak
oretara bearturik,
irakuritzen ezdakitenak

ta ez aditzen oiturik,
gizon argidotaŕen artean
maiz izaten d'an konturik.
Oŕegatikan ikusten dira
askotan txit beroturik,
ezer balio ez duten gauzak
oso aunditzat arturik,
edo aundiak ezerezera
beren ustez biurturik;
erabaki nai eta iñola
itzikan eziñ neurturik,
beren antzeko aditzaĺea
buĺaka iya gorturik;
ta berak duten trakeskeriaz
azkenean asperturik,
altxatzen dira eserlekutik,
atzapaŕak goititurik
ta asten dira elkar zanpatzen
ukabiltzaŕak loturik.
Ustez jakite zerbait d'uena
oyeri begiraturik,
egiten duten baldarkeriaz
gelditzen da aŕiturik,
esanaz:—¡ nola ezagutzen dan
daudela atzeraturik!
—Bai, egia da, ori geyenak
daukagu ezaguturik;
bañan, au eŕez eraman leike,

ez balitz okeragorik;
ayengatikan, gutxitan oi da
familietan lutorik;
gizon aundien iñozokeriz
gaude onetaraturik.
¡Nola nai dute ez izatea
berentzako arenkurik!

—Pax in terra hominibus bonae
voluntatis»—, len esanik;
—«ez egiozu besteri egiñ
»zeretzat nai ezdezunik;
gizon guztiak anai zerate,
»jakiñ zazute azkenik,
»ez dala iñor Jainkoarentzat
»aztu ta gelditzen danik».
—¿Badago kristau egiazkorik
txit ondo ez dakienik
oyek Jesus'en itzak dirala
Berak legetzat emanik?
Gañera denok barjakindean
dauzkagun gauzak izanik,
eta jakiñik ontzaz kanpora
ezdala bide zuzenik,
¿nola liteke arkitutzea
aiñ dolorik, aiñ zekenik,
arazoyaren lege santura
erori nai ez duenik?

Begira nago, ta ala ere
eziñ det snistatu nik,
kristau artean arkitutzea
orelako txartasunik.
¿Zertako dira erakusleak,
zertan egiñ ortan lanik
araudeari ez ematekoz
jakintsuak aitormenik?
¡Aundi gaiztuak diran tokian,
ez eskatu, txiki onik.

Leundu gabe oraindik dauden
gizon iľun ta zakarak,
bizi diranak atzeratuak
diralako basatarak,
ikusten dira beren artean
luzaturik atzaparak,
lagundutzen ez diotelako
izketan mingaiñ baldarak,
edo trakestu dituelako
arduak edo patarak.
Bañan orien eginpideak
bestek gutxitan nozitzen ditu.
baizikan beren bizarak.
Aseretzera iritxitzean
gizon aundi ta azkarak,
utsa litzake ortaratuko
balira berak bakarak;

ordea oyek jotzen dituzte
geŕa-soñuko adaŕak,
deituaz gazte sasoi dutenai,
utzirik ume ta zaŕak,
ta emakume indar gabeak
kendurik beren senaŕak ;
kupitu gabe ama gaixoen
zizpuru eta negaŕak
ta gizonari deitzen dioten
emazteen deadaŕak...
Gisa oŕetan naspiḻaturik
pakean zeuden baztaŕak,
bukatzen dira dama kutunen
abo politeko faŕak.
itzaldurikan begi alaien
dizdizarizko txingaŕak.
Aitonak makur, amak auldurik
ta goseak iltzen auŕak
nola ez daukan zer kendurikan
len tititsu zan bulaŕak,
zergatik kolko oparotsuak
gelditu diran medaŕak.
Lengo arto ta gari-soroak
estalitzen ditu laŕak,
eta etxean ziran jankayak
kiskali su eta gaŕak,
arkiturikan lurperatuak
nagusi eta maiztaŕak.

¿Baleike iñor ontaratzea
munduan bizi beaŕak?
Begirozute albait kupidaz
¡O, gizon argidotaŕak!

Esaten da ¡ai! beaŕezkoa
dala iñoiz geŕatea!
Zeñek naiko du bere amari
iñork miñik ematea?
¿Ez da orduan aŕazoikoa
beraren alde joatea,
baldiñ oskaitu albaliteke
egiñ dioten kaltea
Bai, au da seme leyal guztiak
daukagun borondatea.
Bañan, ¿zertarako da ipintzea
luŕa odolez betea,
isurtzen dala, geyena bada
gaitzik gabeko maitea?
¿Ez da obea beste dieŕi
batek artzea partea,
ta egiazko juez egiñik
kulpaduna bereistea?
Merezi badu, kendu bizia
edo erantsi katea;
gaizkirik egiñ ezduenari
obea esatea:
—zurekin ezdet zer ikusirik

ta etxera joan zaitea.
—Ama leyalak, beti naiko du,
seme onak izatea;
txarkeri gabe, abaldinbada,
ařazoi eramatea;
zergatik geřik onena baño,
beti obe da pakea.

Izutzen gera neguko ařats
ekaiztsu ta iľunean;
oñazkařen su eřabitsuaz
turmoi t'ařijas unean,
itsasoaren ořo-buřunba
iritxitzen zaigunean,
ujola edo sua gaľentzen
ikusten ditugunean.
Ikaratuak arkitzen gera
gaitz bat datorkigunean,
sosegu edo lasaitasunik
iñon ezdaukagunean;
belduřez eta lařitasunez,
beti estutasunean,
¡gure bizia ain da tristea
pakerik ez degunean!
Ta, ala ere, ¿gañera gerok
geřa piztu azkenean?
Aitor dezagun mundutařak ez
gaudela zentzu onean,

guda, buŕuka eta bekaitza
maiz darabiltzkigunean...
Bañan, oraindik, sartu gindezke
anbat bide zuzenean,
sinistu eta pentsaturikan
Maisuaren esanean;
begiraturik nola negua
igaro ta ondorean,
itxaso ta lur, landare, lore,
denen alaitasunean;
eguzki goxo, txori joxtalu,
aize epel bigunean;
gau izartsuan ilargiaren
begirakun txukunean;
eŕekatxoen mur-mur soñuan,
nonnai, goian eta bean,
*ori guztiya pakea dala*
ta askoz gisa obean,
gizona aisa bizi leikela
aŕazoiztutzen danean;
lan txaŕerako ainbeste griña
onerako duaenan.

Armak utzi ta aitzuŕak artu
eta soroan lanean,
edo bakoitzak zerbait mesede
egiñ lezakenean;
aita ta ama, senar-emazte
ta auŕak aldamenean,

otorduetan ta aŕatsean
bildutzen diradenean;
senide, aide t'adiskideak
maitaro datozenean,
pake santuak elkarganako
dakaŕen naitasunean,
munduan izan gintezkeala
gu zoriontasunean,
lagun urkoa bear bezela
maitatzen dakigunean...
Otoitz egiñaz bukatutzen det
Jainkoaren izenean,
dolorkeri ta gaitzak kendurik
pakezko osasunean,
Berak ipiñi gaitazla, aŕen,
denok anaitasunean.

... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ...

## LABURGOA

—Geŕik onena ¿zer da azkenik?
—Da, doakabetasuna;
biotz gogoŕen zitalkeria,
pozoyezko erantzuna;
arlotegitza ta oñazea,
gosea t'eritasuna;
eriotza eta infernua...
—¿Ta, pakea?
—Osasuna.

# AMETS BAT

Ni jayo nintzan Euskal-Juŕeko
leku pozgaŕi abetan
eta Euskera irintsi nuben
lenbiziko asnasetan,
amak siaskan nedukanian
edo bere besuetan,
kontu politak esanaz beti,
kantatuaz batzubetan,
geren aitonak moldatutako
itz neurtu ta bersuetan.
Neri begira eziñ aspertuz
antxen, ordu osuetan,
semetxuaren bizigaŕiya
berak bere petxubetan
emanaz, azi ninduben aiñ
izaera goxuetan,
non egundaño etzaidan aztu
geroz nere pausuetan,
iñoiz arkitu izanagatik
bizitza erosuetan:
ainbesteraño baturik negon

neronen gurasuetan
ta txikitatik nere onduan
ikusitako gauzetan;
bañan etsayak miñ artzen non-
[bait
gure poz ta jolasetan,
argatik gerok batere kulpik
ez gendubela ezertan,
txit uŕutira joan biaŕa
izandu nuben bateŕan,
oso gazterik aŕkitu nintzan
Amerikako Panpetan
ta bizimodu txit erosua
iduki aŕen an bertan,
nere biyotzak etziran uzten
sekulan ere paketan,
iduri zuben beŕiz eguak
neukazkiyela anketan:
esaten da, bat bizi leikela
ondo alderdi danetan,
—bai asetzia beste gauzarik
ezpadu artzen aŕetan;—
bañan gizonak odol pixka bat
baldin badu eŕayetan
eta txikitan bizitu bada
esan dan modu ayetan,
egunaz zerbait atzendu leike
darabiltzkiyen lanetan;

bañan pentsatzen jartzen danian
bakardian gaubetan,
zenbaterano supritzen dan
nik ondo progatu det an:
iñola ezin pentsatu nuben
nere lurian bestetan,
eta, ara zer gerta zitzaidan
arats batez ametsetan.
Amets eragiñ ziran
neukan desiuak,
non artu orduráko
arats artan luak,
beriala zabaldu
zizkiran eguak,
eta lagundurikan
betiko leluak,
ixtan batez igaro
nituben leguak,
mendi eta zelayak
tontor da zuluak;
legor eta bustiyak
lur ta itsasuak,
laño eta odeyak
eri ta basuak,
batere neke gabe
egiñaz pausuak,
neretzat bide denak
ziran erosuak:

inbiriya ziraten
aideko usuak,
atzian gelditutzen
ziran balazuak,
ta etziran segitzen
tximistaren suak;
eziñ busti ninduben
euri erasuak,
aitu ziraden traba
eta arazuak;
uŕuti egon aŕen
nere gurasuak,
Amerikan zabaldu
orduko besuak,
biyen tartian artu
nituben gaxuak.

*Nik.*—¡Ama!... ¡Aita!... amatxo!!
*Amak.*—¡¡Nere seme!!... semetxo!!
Nere besuetan... ¡¡o!!
*Aitak.*—¿Mutil, emen aiz?
Nola ago?
*Amak.*—¡Ai! Eutsi, nere seme...;
muxu bat, onlaxe...
ma, ma, beŕiz ere bai,
ma, len bezelaxe...
jango zinduzket dana,
aren nago gose...
auxen da zoramena,

ni eziñ naiz ase...

Nere seme laztana,
ondo zaude noski?
Ni il̃ko ninduke zu
ikustiak gaizki...
Sekulan ez det izan
ai! onenbeste poz,
argatikan begiyak
bete zaizkit malkoz;
bañan biyotzetikan
aiñ eztiro datoz,
far̃ez baño geyago
gozatu det askoz;
nere seme eder̃a,
eldu ber̃iz, atoz.

*Nik.*—¡Ama! aita...
aparte bizi beraz
onenbeste naita!!

*Aitak.*—Mutil̃ auxen nai nikan,
oraiñ emen ago
ta ez dek noski ber̃iz
asmorik izango,
gure aldemenetik
joateko geyago;
ez aldiguk orlako
penarik emango!

*Amak.*—¿Zer da, nere senar̃a,
zer da kontu ori?

Geyago orlakorik
begira gero neri
aipatutzen banazu!
Atoz; Peĩo Mari;
laztan gozo bat, muxu...
orlaxen... amari...

... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ...

Nere seme edeŕa,
au poza eman diak;
iya ler egiñ zikan
nere baŕunbiak!
Ama guztiyak gaituk
semien zaliak,
bañan nork izateizkik
onlako aliak?
Nik egiñgo nizkikek
miĩaka galdiak,
nekatuba ez baldiñ
baeuka biriak,
bañan nola egongo
aizen logaliak,
ondo gobernatuta
oyera joan biak.
Denak lotan zioztik
ire senidak,
—i ezkeroztik sortu—
tako landariak;—

bigar gonbidatuko
dizkiyat aidiak
ta inguru-mari-
ko adiskidiak;
pobre izan aŕen ez
gaituk eskaliak,
zer jana bazedukak
gure sukaldiak;
bañan nik badizkiyat
mokaru obiak
armariyo txokuan
iretzat gordiak,
umotutako sagar
eta udariak,
jaŕi ezkeroz iñork
ikutu gabiak...
Ia semetxo, muxu
bat eman akiak,
goxatzen aukanian
oyeko pakiak,
ayek janaz kontubak
esango nazkiak...

... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ...

*Aitak.*—¡ Zer goguangaŕiya
dan gauŕko eguna!
auxen da suertia
izandu deguna!;
etortziak gañera

gure seme ona,
guk etxian ostatuz
daukagun amona!...
*Amak.*—Iya ez nintzan artzaz
oroitzen, gizona;
gure mutilak eman
digun poztasuna
dala meriyo neukan
burutikan juna.
¡Uraxen da xaŕa ta
polita zegona!;
begiyetan aldizka,
zer zalaitasuna!
bañan galdu xamaŕa
dauka osasuna
edo baŕenen zerbait
berak nai eztuna.
Suspiriyo batzubek
ixilik entzuna
nago berari, eta
pentsatzen egona:
—¿Atxo xar polit onek
zer ote du Jauna,
semien bat agiyan
aldegiñ dubana?
Ainbeste begiramen
neukan beregana,
ikusirik aiñ xaŕa

berogei arabakiz
konponduba gona,
alde danetara aiñ
modu polit-duna,
diruri aingeruben
kolkoko katuna,
kontatu digu bere
bizitza astuna
(¡ Guk zer baliyo degu,
ura da iztuna!)
bañan erana dago
nonbait beazuna,
negarez aipatutzen
du etorkizuna.
Nik ere nola dedan
txit biyotz biguna,
berialaxen artu
diyot naitasuna,
eta galdeturikan
al beziñ leguna:
—Ama, berori zein da,
anbat alarguna?
—Erantzun dit esanaz:
—Ni naiz *Euskalduna*.

... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ...

Onen ondoren, amak
agindu bezela,
eskuban arturikan

piztu ta kandela
ta esanaz Jainkuak
gaubon ziyotela,
zai nedukan oera
joan nintzan berela,
amona xar on ura
goguan nubela.
Erantzi ta maindire
tarteko epela
goxatzen, iya luak
artuban neguela
ta begiyak itxiyak
nedukazkiyela,
golpez ikusi nuben
argituba gela,
eta erdi erdiyan
txutik zeguela,
amona xar bat, diz, diz,
egiten zubela,
eta izketan asi
zitzaidan onela:
—Ama Euskera naiz, Pello Mari,
etzaitezela bildurtu;
kezketan nator beste aldera
ote zeraden biurtu.
¡Ainbeste semek iges egin dit,
iya naiz negarez urtu!
ez ote dezu zuk ere naiko
nere malkorik legortu!

Au aditzian odol guztiyak
ur biurtu zitzaizkian
eta saltatu nintzan oyetik
zergatik negon gaizki an,
esanaz:—Ama! bere luŕian
beraz berori eskian?
Beria nau ta agindu bizait
nik zer egiñ nezakian.

—Gauza aundirik etzenezake,
ezagututzen det ori;
uŕuti izan dan batentzako
tranko lan zala diruri;
bañan eztiyot nik eskatutzen
eziñ dubenik iñori,
eta ara zer agindutzeko
asmoa daukadan zuri.

—Eskutik eldu ta muñ emanaz
bertan belaunikaturik,
erantzun niyon: Ama, agindu;
ez izan nitzaz ardurik.
Beraz beroŕen luŕian dago
Euskera iya galdurik?
Ni beria nau eta ez det nai
kontzientziko kargurik.

—Diyozun aña maite badezu
zartu dan Ama Euskera,

bil̃a ezazu Euskal-Er̃ia
izendatzen dan papera;
ura da nere bizi-lekuba,
ez det nai andik atera;
seme leyalak an biltzen zaizkit
joan zaiztez ayen artera.

Ama Euskerak au esan ziran
jar̃irik begi alayak,
or̃engatikan nakar onera
berari lugundu nayak;
gutxi nezake, oso txikiyak
dira nik dauzkadan gayak;
bañan pozkiriz egiñgo ditut
gaubak egun, aste jayak;
leku pixka bat Euskal-er̃ian
eskatzeizutet, anayak.

# LIMOSNATXO BAT

Mutil koxkor bat itxu-auŕeko
zubela aldamenian,
gizon burusoil bizar-zuri bat
bi makuluren gañian,
kale (i) ertzian ikusi nuben
iñora eziñ joanian;
ta bera nor zan jakiñ nayian
inguratu nintzanian...
limosnatxo bat ekatu ziran
Jainkuaren izenian.

Zerbait emanaz galdetu niyon
altzan modu onenian,
jayotzatikan al zeukan ala
gaitzak artuba mendian;
erantzun ziran: ez, semia, ez,
nik indaŕa nubenian,
ez nuben uste iritxitzerik
onetara azkenian...
gaur limosna bat eskatutzen det
Jainkuaren izenian.

Eta jaŕaitu zuben esanaz :
—lengo geŕate denian,
ni auŕen xamar ibiltzen nintzan
beti edo geyenian ;
nekatu gabe, aisa igoaz
aldapik luzienian ;
etzan burura asko etortzen
gu ala gebiltzanian...
gero limosna eskatutzerik
Jaiskuaren izenian.

Odolak bero eta buruba
aŕua daguenian,
edozeiñ eran sartutzen da bat
alako itxumenian ;
atsekabe ta negar samiñak
badatoz ondorenian ;
sola erebait batek biziya
utzitzen ez dubenian...
limosnatxo bat eskatu biar
Jainkuaren izenian

Iñoiz pentsatzen nere artian
ni jaŕitzen naizenian,
gaur ere asko dirala joango
lirakenak zuzenian,
ez luke iñork sinistatuko
zer pena ematen diran.

Ai ! orla nintzan ni ere sendo
ta gazte nenguenian...
gaur limosna bat eskatutzendet
Jainkuaren izenian.

¡ Ai! txorakeri asko egiten
da zentzurik ez danian,
sinista zazu ur au pasia
daukanaren esanian;
obiago da garai dan arte
alegintzia lanian,
negar egiñaz ibili gabe
gero denbora joanian...
limosnatxo ebat bildu eziñik
Jainkuaren izenian.

# TXEPETXA

Askotan esan izandu dute
gizon ikastun argiyak,
nola pixtiyak izan litezken
gure erakuslariyak;
erlia da bat aipatzen dana,
o! zer lan arigariyak
jartzen dituzten gure aurian
onek eta txinguriyak!
txepetxak beriz erakusten du
ainbeste nola aik biyak.

Euskal-lureko txoriyetan dan
txikitxuena da bera;
gaztañ kolore bakarekua,
nai bada ez da edera:
begi argiyak, buru xanpala,
moko tentia aurera;
Gorputza motxa, anka laburak,
xaltokako ibilera;

xalapartako egalariya
eta kantari ergela.

Txotx batek aisa jasoko luke
nola karga gutxi duan,
bañan gustatzen zayo jartzia
adar sendoxiaguan;
amildu aren ez leike galdu
dakiyelako eguan;
bañan arkitzen baldin bada ere
burnizko aldamiyuan,
iru-lau aldiz xanpatutzen du
seguro ote daguan.

Udaberiyan lendabiziko
kabiya txepetxarena
azaldutzen da ta ezaguna,
goroldiyozkua dena;
arbol geriyan, untza tartian
du lekurik maitena,
ta gizon askok ikusitzian
iritxpirian daguena,
esan oi dute:—zer konfiantza,
txori txar onek dubena!

Ta edozeñek esan lezake
berari begiratzian;
aretarikan ez daukala

egiñ leyoken gaitzian;
ez-iduriyan ark kabiyari
beste zulua atzian
egiten diyo, andik joateko
aurerakua tapatzian;
erakutsiyaz pentsa zegula
nola atera sartzian.

# "URTE BEŔI"

**Euskaldun jator, On Luzio Kortejarena'ri donkituba**

Ogeigaŕen eunkiyan
Kristauben bizitzan,
Bi urte igaruak
Dauzkagu desditxan:
Begira dieŕiyak
Zer nola dabiltzan,
Elkar puŕakatutzen
Non nai arakintzan
Auŕeratutzen guaz...
Txanguŕuben gisan.

Gizon eta eŕiyak
Dabiltza bilduŕez,
Elkar zelatatubaz
Legoŕez ta urez;
Itz edeŕak esanaz,
Baŕendik gezuŕez.
—¿Zeiñ dirade gaiztuak?
Bestiak bai, gu, ez...
—Indaŕa nagusi ta
Gogoŕena juez.

Auŕeratu dubela
Gizonak luŕian,
Esaten da mirari
Askoren auŕian;
Bañan gizatxaŕaren
Biyotz gogoŕian
Eta aŕo doloŕen
Zentzu labuŕian,
Aunditasuna dago
Eskumutuŕian.

Asko auŕeratu da
Bañan ¿zertarako?
Ez bada naitasunik
Elkaŕenganako?
Atzapaŕak dabiltza
Biyurturik kako,
Bestientzat bezela
Euskal-eŕirako...
Ez degu aŕazoyik
Gutxi geralako.

¡Gutxi! ¡Ju, ju... Eztakit!...
¿Ala ote gera?
Begiratubagatik
Askok goitik beera?
Gu ez guaz beñere
Besteren kaltera,
Ta, zeñek daki nola

Gintezken atera,
Bilduko bagiñake
*Zazpiyak* batera.

Aundiyak izan aŕen
Euskaldunak neuŕiz,
Nekatubak gauzkate
Gauza lotsagaŕiz.
Munduban garbiyenak,
Gu gera jatoŕiz,
Anayak, poz gaitezen ,
Sortu giñan eŕiz ;
Agurtutzen zaituztet
Denak Urtebeŕiz.

# AMERIKAKO PANPETAN

Euskal-Eŕiko lur maite artan
Jayo nintzan baseŕiyan,
Itzal aundiko intxaur arbol bat
Dago gure atariyan:
Aren ondotik irten da noiznai
Maldako gaztañariyan.
Edo, sagaŕik onenak jaten
Lubeŕiko sagastiyan,
Arbol tartian bizitu nintzan
Gazte denbora guztiyan.

Denak utzi ta etoŕi nintzan,
¡ Lur au ikusi nai nuan!
Aritz tantayak, pago lerdenak,
¡ Nola ez izan goguan!
Oraiñ artzantzan Ameriketan
*Aŕantxo* baten onduan,
Eguna igaro laŕian eta
Jiratzen naizen orduan,
Nere begiyak gozatzen dira
Aldameneko *ombu*'an.

Ainbesteraño tristetutzen naiz
Eremu zabal oyetan,

Arbolak, mendi eta eŕekak
Falta diran zelayetan,
Non etoŕi ta escritzean
*Onbu*'zar onen zañetan,

Edo igo ta osto tartian
Bere adar bikañetan
¡ Ene! ¡ Amatxo! Nik nola esan
Zenbat gozatutzen detan!

Txabol ondoko *ombu* laztana,
Maitatzen zaitut gogotik
Eta biyotza erdibitzen zait
Joatian zure ondotik,
Nere burura ekartzen dezun
Oroimen gozuagatik.
Zure itxura nai det ikusi
Ez dizut eskatzen frutik
Ni emen bizi naizen artian
¡ Aŕen! ¡ egon zaite zutik!

Nere lagunik maitatuena
*Ombu* laztana, zu zera,
Argatik nator zure kolkora,
Ni malkuak isurtzera,
Iduriturik naramazula
*Atariko intxaurpera*...
Beti izango zaitut goguan
Bañan joan nai det ostera,
Euskal-luŕeko zuaizpe artan
Nere ezuŕak uztera.

# AITA-SEMEAK

Lagundurikan denoi
Gugatik il zanak,
Seme, azi zaitugu
Aitak eta amak,
Beti zure gidari
Izandu geranak.
Oraiñ gurutze onen
Oñean esanak,
Ondo goguan artu
Biaituzu danak.

Zu Ameriketara
Joatia emendik,
Jaunak ala nai badu
¡ Zer egingo det nik!
An ez dezu izango
Aitik eta amik;
Baña etzera galduko
Noranaira joanik.
Ez bazaizu aztutzen
Gaur emen esanik.

Gorde zazu buruan
Eta biyotzean,
Aitak zer esan zizun
Onuntz laguntzean,
Bitarteko arturik
Jesus gurutzean:
Jaungoikua t'ait'amak
Batek aztutzean,
Ez leike ondo izan
Denbora luzean.

Ez nizuke utziko
Joaten, egiyetan,
Gure erlijiyua
Ez balitz an bertan.
Iritxiko baziña
Aiñ uŕutiyetan,
Eŕi ta eleizarik
Ez dan tokiyetan,
Oroi zaitez Jainkoaz
Leku guztiyetan.

Seme, izan goguan
Zere gurasuak
Eta uzten dituzun
Senide gozuak;
Jayo ziñan tokiko
Mendi ta basuak,
Euskerazko otoitzak

Edo eŕezuak,
Erakutsiyak zure
Amatxo gaxuak.

Iritxi da orduba
Juan bear dezuna,
Badakizu ait'amak
Emen dauzkatzuna;
Ez dezazula aztu
Gaur neri entzuna.
Itz baterako au da
Eskatzen zaizuna:
Izan zaitez nonnai ta
Beti *euskaduna*.

## PEŔANDO AMEZKETAŔA

Egon oi dira gordiak
loriak
Nik nai det biĺatzen saya
usaya
Eta arki leike eŕez
berez
Nola dakarkiyen legez
*Loriak usaya berez.*

Zenbat gauza on munduan
txokuan
Daude lurpian galdurik
azturik
Eta gelditzen dirala
ala!
Ez ditzagun utzi bada
*Txokuan azturik ala.*

Zazpietan egonak
gizonak
Diamante ta uŕien
lorien

Antzera oi dira izan
gisan
Ai! zenbat ote dabiltzan
*Gizonak lorien gisan.*

Azaldu gabia ondo
Peŕando
Zabaldu aŕen usaya
Artzaya
Bañan lezateke esan
nor zan
*Peŕando artzaya nor zan.*

On geyena dan lekutik
Zerutik
Ez eskolan ikasiya
jatxiya
Zebiĺela ardi ondoren
zuben:
Peŕando'k suba baŕunen
*Zerutik jatxiya zuben.*

Arek etzekiyen asko
moldezko
ta esku-izkribuetan
letretan;
Bañan ura zan Euskera
bera
Argatik nai det atera
*moldezko letretan bera.*

# NASKETAK

Lengo egun batian
Juan eta Andres,
inguraturik beren
umez eta andrez,
asi ziran izketan
bulan eta oska
bazirudiñ norbait jan
nai zutela ozka.
Andre eta umiak
gero etxera juan
ta bakarik gelditu
ziran Andres ta Juan.
Biyak mintzatzen ziran
ainbesteko suban
jende ark nunbait txit miñ
izan biar zuban.
Andres'ek onla ziyon:
—adi ezazu, Juan·
lengo oitura onak
nora zaizkigu juan?
—Lengo oitura onak
nora juan diran?

baziñaki bada zer
su ematen diran...
—«Zu» ematen dizula?
—«Su» esan dizut, «su»
¡zer euskaldun andaluz
zerade beŕiz «zu)!

—Nik ori esan aŕen,
euskaldun bikaña,
lur au maite detana
agiyan bik aña.

¡Nola esan nik zenbat
maite detan bera!
ikusten deranian
dijuala bera,
negaŕez urtutzen da
nere biotz bera.

Gure ontasun danak
dizkigute ostu,
gero sutan gaudela
¿nola ordia oztu?

Guri bildu zaizkigu
urtiak gañera
ta semiak soldadu
eraman gañera.

Eziñ gusto emanaz
ainbeste erori,
guk ¿zer egingo degu?
¡lurpera erori!

Nere emaztiari
begira negon atzo,
gaztia dalarikan
biurtu zait atso.

Txardiña zaŕa jan ta
gañetikan ura
¿nola onduko zayo
kolore txar ura?

Ezuŕetan baŕena
sartu zayo otza,
gau guztiyan badegu
eztularen otsa.

Seme bat du ta bera
soldaruzkan sartu,
bat denbora baño len
¡nola ez bada zartu!

Oraindik gaztia da
urtez eta iľez,
buru dana betia
biar zuben iľez,
ortzak ere juan zaizka
indar danak iľez.

Aren kolore onak
zeduzkanak igez
egiñ diote noski
sekulako iges.

Len pozez mendirañо
oi zana atera,

gaur ozta azaltzen da
etxeko atera.
Beldur nintzan gaitz ura
geiegi eltzia,
ta salda onarekiñ
jartzekoz eltzia,
biañezkua nuben
zerbaiti eltzia.
Il nituben lau olo,
olara ta aatia;
bañan nere andriak
eziñ pasa atia.
Beyak ere esnerik
etzedukan iya,
zergatik jaten zuben
zingirako iya.
Onelakoxe lanak
etoririk guri
iya igartu gera
len geundenak guri.
—Zure koitak ixilik
dizkitzut aditu,
esan dezu nekian
zerala aritu,
lengo ondasun danak
ala-ere aitu,
sinista zazu ez naiz
batere aritu.
Ni gauz oyen gañian

izketan astian
ari neike ixildu
gabe bi astian.
Nik guztiyak esango
banizkitzu zuri,
izubak ipiñiko
zinduzke aiñ zuri,
non egingo zenduken
zuk, ezikan eze,
ikararen indaŕez
balantz edo ese,
ta luŕera erori
igar eta eze.
Nik ere banituben
lau bei ta bi ari,
gañera berdumenak
zenbait libra ari,
semeari esanaz
mutil saia ari;
danak eman giñuzkan
zure etsai ari.
Nik ere banituben
ala ta botia
diana dadukat aiñ
uŕuti botia,
gomak ez luke egiñgo
aiñ luze botia.
Oraiñ etoŕi zaigu
bizi-modu zaĺa,

galdu gendubelako
len gendukan saĩa.
Lo egiteko daukat
oirik ez ta aska,
alpeŕik da nai aŕen
memoriya aska,
iĩ arte bizi biar
burubari azka.—
Izugaŕizkua zan
gizon ayen miñtza,
argatikan ziraden
—era ortan mintza,
aseŕez goŕiturik
aurpegiko mintza.
Ayek esango zuten
geyagore anbat,
bañan ezin zeikian
beti egon an bat.
Argatik ez nioten
geiago aditu,
ta neronek somatzen
ez det nai aritu.

# NOIZBAIT

(ORDAÑETAN)

Jeronimo Elizegi,
Zure «Oroimenak»
Pozkidaz bete ditu
Gure bañenak;
Goitaltxatu gaituzu
Otaño'tar denak,
Ingurukuak eta
Uŕuti gaudenak;
Bizi geradenak,
Ta il ziradenak,
Pozak eta penak,
Gure kastarenak...
Ar itzatzu eskeŕik
Bereziyenak.

Elizegi, altxatzen
Gaituzu txit gora;
Zeiñ ezdute gauz oyek
Uzten gustora!
Gaur ez merezi aŕen
Oŕenbeste onŕa,

Irabazten leiatu
Gintezke gerora:
Guk ortik kanpora
¡ Ai, zenbat denbora!
Bildu gabe iñora,
Lagunen ondora...
Poza da ekartzia
Batek gogora.

Erabaki zerade
Modu bikañian,
Askok iritxiko ez
Luken añian,
Bederatzi puntuko
Doñu apañian;
Beragatik zenbaitek
Zauzka mingañian;
Nik beiñik beñian,
Aiñ gogo fiñian,
Agertu danian,
Euskal-jardiñian,
*Lore beŕi alai bat*
*Arantz gañian.*

Gure euskal jardiña
Arantzaz josirik,
Aŕitzeko da nola
Dagon bizirik;
Oŕenbeste penatzen
*Ama* ikusirik,

Bere semiak eziñ
Geundezke geldirik:
Guk zabar utzirik,
Ez ark merezirik,
Daukagú jatxirik
Ta eziñ altxarik
Zergatik batzubek ez
Duten lotsarik.

Kizkurturik jaŕitzen
Zaizkit atzapaŕak,
Gogoraturik *amak*
Dauzkan negaŕak;
Ez eskeñitzekotan
Ditugun indaŕak,
¡Zertarako gerade
Aiñ seme zabaŕak!
Ondu bitez txaŕak
Ta *gizondu auŕak*.
Leyal ta azkaŕak
Puskatu amaŕak...
Ez gera esker gabiak
Otaño'taŕak.

Aita ta anaya il
Ziran ezkeroztik,
Bersuak ilunpian
Gelditu zaizkit;
Nola etzetorkidan

Iñondikan pozik,
Zure *oroimen* onak
Ederki datozkit;
Orain ere ortik,
Gure sorlekutik,
Betiko txokotik...
Lagun zaŕetatik...
Guztiyai eskumuñak
Gure partetik.

# GU TA GU-TAŔAK

«¿Zer da Euskera, nor euskal-
[dunak
zeiñ, ta nongotaŕak dira?
Galdezka daude atzeŕitaŕak
alde ontara begira,
mundu guztiyan bere berdiñik
ez duben Euskal eŕira.
Eziñ ikusi gaituzte ondo,
irten gaitezen argira,
iñork mantxarik sortu ez dezan
gure jatoŕi garbira.

# OROITZTXOAK

Lenago anbat aintzat artzen ez
ginduzen gauza guziyak,
ainbesterano edertzen ditu
orain ezin ikusiyak:
Euskal-eriko mendi ta zelai,
ibai, arkaitz ta sasiyak.
beñere ezin aztu litzake,
ayen tartian aziyak.

Uruti zaude eta zaĺa da
ni zugana irixtia;
onenbeste nai dizun batentzat
¡zer bizimodu tristia!
alibiyo bat bakara daukat:
ametsetan sinistia;
Zu ikusteko noiznai asko det
nere begiyak ixtia.

Sasi tarteko lore eder bat
bezela dago Euskera,

eztakit nola oituratu zen
geran txokuan uztera:
esku on batek beiñ aterako
baluke erakustera,
ez det bildufik lurperatuko
litzakianik ostera.

# EDER BATI

Triste ikusten zaitut,
Mirabe garbiya,
Beti izana zerana
Lagunen argiya.
¿Nora joan zaizu, nonda
Lengo far-iřiya?
¿Zer gertatutzen zaizu,
Aur maitagařiya?

Izar edeřak diz-diz
Nola egiten duban,
Odeyik gabe urdiñ
Daguen zeruban,
Zuk oraindaño ala
Egiten zenduban,
¿Arantzen bat aldezu
Biyotz samindubán?

# NERE KABIYA

( BAZTAN'DAR BATI )

Lenbiziko arnasa
Artu zan lekura,
Zeñek eztu izango
Joateko ardura?
Txoriyak kabiyari
Nai diyon modura,
Nik maitatzen det beti
Txoko eder ura.

Euskal-eŕi guztiya
Maite det benetan,
Ñere anayak daude
Probintzi denetan;
Bañan Napaŕoako
Mendi alayetan,
An jayo nintzan eta
Il nai det an bertan.

Elizondoko uri
Maite ta laztana,
Ona seme bat zutzaz

Aztuko eztana;
Beti eskatzen nago
Jaungoikoagana,
Il baño len eraman
Nazala Baztana.

# MAISUBARI

Esaera zaŕa da,
Iñoiz jakintsubak,
Egiñ oi dituztela
Txit gauza txatxubak;
Zalak dira bildutzen
Onra ta protxubak
¡ Nola ez du pentsatu
Au gure maisubak!

Gu'k nai diyogulako
Euskerari fidel,
Ipiñtzen diguzu
Bekoskua goibel?
Asko dakizularik
Gaizki zaude, Migel,
Ezin biurtu leike
Amoŕayik igel.

Gerentzako degula
Naitasun uŕiya
Ta bestienganako

Guztizko tiřiya.
¿Beraz ořen zitala
Da Euskal-eřiya?
¿Ain txartzat aldaukazu
Zere jatořiya?

Ezagun da eřitik
Uřuti zaudena...
Ez da gaitza euskaldunak
Eskatzen duřena,
Baizik izan dediřa
Ongi mundu dena
Ta utzi deigutela
Ostu ziguten**a**.

Gutxik letzen dubela
Euskeraz ta argatik
Izkribatutzen dezu
Erderaz gogotik.
¿Guk ez ta zuk badezun
Maitasunagatik
Edo kalte geyago
Egitiagatik

Jakiñik orkuak zer
Tiři dabilkiten,
Beñere ez dutelako
Egirik jakiten,
Etziñan nekatuko

Lan oyek egiten,
Ez baziña gaurdaño
Bilbaotik irten.

¡Bilbaotik irten ta
Salamanka'raño!...
¿Noraño joan zerade
Zu, Migel, noraño?
Gu etoŕiyagatik
Beste munduraño,
Uste det alderago
Gaudela zu baño.

Labur gelditu aŕen
Euskerazko lanak,
Badira erderazkuak
Zureganuntz joanak;
Irakuŕi itzatzu
Albadezu danak,
Utzi gabe egiña
Basaldua jaunak.

# ZAZPIAK-BAT

Zazpi aizparen gai dan oyala
Ebakirikan erditik,
Alde batera «iru» soñeko
Utzirikan «lau», bestetik
Goraiziakin berezi aŕen
Bakoitza bere aldetik,
Ezagutzen da jantzi dirala
Zazpiak oyal batetik.

Oyaltzat artu zagun Euskera,
Goraizitzat Bidasoa,
Ibai koxkor bat besterik ez da,
Utsa balitz itxasoa:
Elkaŕen urbil daude Zazpiak,
Muga deitzen da «Pausoa»
¿Zergatik izan bear ez degu
*Famili bakar osoa?*

Arbola baten zañetatikan
Sortzen diran landariak
Bezela gera, Bidasoa'ren
Bi aldetako jendiak:

Berdiñak dira gure jatoŕi,
Oiturak eta legiak,
Ama Euskerak magal berian
Azitako senidiak.

¡Ama Euskera! Bere semeak
Gu Ameriketan zenbat
Arkitzen geran! ta uŕutitik
Maitiago degu, anbat:
Emen ez dago Bidasao'rik
Ta beste trabik an ainbat;
Ama maitia indartu dedin,
Bizi bedi «Zazpiak Bat».

# AMATXO LAZTANA

Seme maite bat bere
Amaren onduan,
Anbat ez da oroitzen
Zeñekin daguan;
Argandik uŕutira
Joaten dan orduban,
Gogoratzen da, amak
Zer baliyo duban.

Ama, aita, lagunak,
Eŕi maitatuba,
¡Aiñ nago zuengandik
Uŕutiratuba!
Eri daukat biyotza
Penaz nekatuba,
Eta falta zait emen
Zeñek sendatuba.

Ama, ona seme bat
Uŕutira joana,
Ama gabe iñola
Ezin bizi dana;

Ama, zuk badakizu
Maite zaitudana
Ama, barka zaidazu,
¡ Amatxo laztana!

# ¡ A G U R !

«ORFEON DONOSTIAŔA»'RI

Agur, orain bi urte
Esan zirazuten;
Agur kantaridiya,
Erantzun nizuten,
Agur ayek ez ditut
Biyotzetik uzten.
¡ Ai! bazeundete txulo
Batetik ikusten,
Nere animak nola
Agurtzen zaituzten.

## AUNTZA LAŔERA

### EUSKAL BIURSARI DENAI DONKITUBA

Baseŕi eder bat, aitak utziya, beria zuben.

Soro zabalak, baso bikañak, mendi galantak, sagasti oparotiyak.

Ikulluba bei gizenez, txal guri-guriz, eta zekor mardulez betia.

Artalde ugariya laŕiyan, naiko arkume ta gazta, saltzeko, eta aari talkalari aundi bat etxian, ardua eraten zekiyena.

Gañera esan oi zan, bazubela lakari bat uŕe, eta berak ere etzuban ukatzen.

Bi moŕoi, baseŕi-lanerako, eta artzai bat, irurak zeiñ baño zeiñ langilleguak eta itzero jauna eta beori esaten ziyotenak.

¡ Biarko !

Inguruko auzotaŕak (bere maiztaŕak batzubek), denak berorika itzegiten ziyoten, aseŕetu etzediñ.

Etziyon iñori dirurik prestatzen, baña zan konseju emale izugaŕiya.

Etxekoandretzat zeukan, irurogei urteko neska zar bat: onek egunaren erdiya pasatzen zuban eŕezatzen, eta beste erdiya eŕitan.

Martolo jauna deitzen zitzayon gizon oni.

* * *

Inguruko baseŕirik txaŕenetako batian bizi zan, Borda izendatzen zan gizon argi bat, beŕogei urtekua, bere emazte Opaloni, lau seme eta iru alaba alayen lagunkidan.

Borda au zan bersolari onenetako bat, eta bizi zan txit arlote, bañan kontentu eta alegere.

Etzan eskatzalia; miñ ematen ziyon iñor biartziak; etzuben nai emaliaren mende jartzia bere azkatasuna.

Au bakaŕik zan, ingurumari artan, etxealdeko nagusiyari, Martolo jaunari, zuka itzegiten ziyonik.

Egun batez, otabar batzuek ebakitzen ari zala, aizkoran kirtena autsi zitzayon gure Borda'ri, eta, esku utsik gelditu zanian, joan biar izan zuben Martolo'ren etxera, aizkora bat presta zeyoten, kirten beŕi bat egiteko.

¡Dan! ¡dan! jo zuben atia eta, azaldu zitzayon nagusiya bera.

—Jainkuak dizula egun on, Martolo.

—Bai zuire, Borda. ¿Zer zabiltza?

Ementxe. Gurdi bat ote ebakitzen ari naizela, aizkoraren kirtena autsi zait eta, beŕi bat egiñ ote nezakian nator.

—¿Ez aldezu otesegik?

—Otabaŕak ebakitzen ari naiz ordia...

—Otabaŕak edo «otatrabak» maiz izateitu zenbaitek.

Beira zazu, Borda, zu gizon on bat zera, gañera famili aundiya daukazu, eta nik pozik lagunduko nizuke askotan, baño, baño...

—¿Zer da?

—¡Ze izango da! Bersolariyak txalo asko irabazten ditu, baño diru gutxi.

—Tori, okolo eskaliak sekulan eztu berso bat bakaŕik moldatu, bañan...

—Zuk beŕiz geyegi.

—Baliteke.

—Buruz azkaŕak zeratelarik ¡zer umiak, zeraten bersolari denak! eta zenbat eta obia, ura ta umego. Txoriyai segika dabiĺen umiak, mandatuba berandu egiten du beti, eta geyeñan gaizki.

Buruba bersoz betia dabilkin gizonak, maiz izan-

go ditu esku utsak Zerura begira dabilenak saritan egingo du estrapozo. Ametsetako irabaziak esnatzian ariyo.

Au zuk, nik baño obeto dakizu, Borda. ¿ Ez da egiya ?

—Ala diruri. Ni beti lanian bizi naiz, dakizun bezela, ez naiz gastatzalia, ta, ala ere sekulan ez det txanpon bat nere mendian.

—Bersuak dute kulpa guztiya. Utzi zazu griña galgariyori alde bat, eta segi zayozu lanari, «lanian pentsatubaz».

Oraiñ, tori aizkora, ar zazu otesega au ere eta zuaz zere lanera.

Neri bersuak gustatzen zaizkit, bañan zuk bota dituzu naikua. Asko dezu.

—Nik ikusten badet nere esan onak zintzo egiten dituzula etzaizu paltako lana ta irabazpidia.

Gogora zaite zere familiyaz.

¿ Egingo dezu nik esan bezela ?

—Sayatuko naiz.

Borda gizagajua, lotsaturik, itzuli zan beriz otelarera, bere artian esanaz : ¿ Arazoi ote du gizon orek ?

Orain, erortzen naiz kontura, egiyaz, ez derala ezagutu bersolari aberatsik, eta lengo zařakgatik ere beti entzun izan det, oso beartsuak zirala.

¿ Ez ote zaio Jainkuari bersorik gustatzen Edo, au ote da sari bat, dirubaren ordez ematen diguna?

Biak eskatzia anbat geyegi litzake.

Martolo'k diyo, asko derala bertsoz.

Proga zagun Martolo'ren konsejuba.

Igaro ziran zortzi egun, amabost, iľabete.

Bordařen etxian etzan sentitzen, len beti oi zan bezela, kanta otsik.

Aita ixildu zanian, mututu ziran ama ta umiak.

Auzoak ařiturik zeuden, zer gertatzen ote zan.

Martolo bakařik zebiľen txit kontentu, pozez ařotuba, egiñ zuben azañagatik.

Iľabete t'erdi bezela zan, Borda, Martolo'ren konsejubakiñ buřuka zebiľela; larunbata zan eta gure bersolari izanduba joan zan Tolosa'ko merkatura, lau sagar landare bizkařian zitubela, ayen baliyuarekin gastuba pagatzeko asmuan.

Saldu zituben landariak, bosna eřialian, eta bere duro aundiya poltsan zubela, sartu zan amaike-

takua egitera, Martolo larunbatero joan oi zan ardandegiyan.

Eskatu zuban kuartilu bat ardo; eskeñi ziyon Martolo'ri, eta onek atera zuben beste kuartiłu bat. Borda gizagajuak etzuben aspaldi artan ardorik progatu, aiñ gogoz eran zuben, eta asi zitzayon buruba pixka bat berotzen.

Atera zuben duro aundi eder ura, bere gerikuaren muturetik, eta esan ziyon tabernariyari:

—Ekar zazu kuartiłu bat geyago eta tori, kobratu nere kontuba.

—Ain gustatu zitzayon Martolori, Borda'ren joera, eta beñere ikusi etzitzayon beziñ arpegi alayarekiñ, rau, altxa zan bere alkitik eta esan ziyon eskuba luzatuaz:—¡ Bejondaizula, Borda! Ekatzu bostekuori. ¿ Ez nizun nik esaten? Ara or bost pestakua, len txanponik etzan tokiyan. ¡ Ai, nere konsejubak lenago artu izan bazindu! ¡ Zenbat ontzakoren jabe ote ziñan oraingoz!

—Sagarlandarien diruba da au, Martolo...

—Bai, badakit ez dala bersuena.

Zuk konsejurik eman baño lenago landatubak ziran, «zea», Martolo. Kantari ari nintzala aldatu nitun...

(Ekatzu beste kuartil̄u bat, tabernariya.)

... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ...

Amaiketako aundiskua egin degu, Borda.
—Gure neurtzal̄a ¿ nor da ?
—Ara, ara gure bersolariya beŕiz piztu.

—Ez dezazula sinistu,
Bersolariya ez da il̄,
Bañan oso gaizki dabil̄
Il̄abete ta erdiyontan
¡ Ai! Damutu zait prankotan!
—¿ Zerena dezu damuba?
—Zuk sartutako amuba
Daukat baŕenen gordia ;
Aterako det ordia,
Tximista demoniñuan,
Bestela penak ilko nau.

—Beste gizonik ziñala uste nuben, Borda ; esker edeŕa ematen dirazu ! Ezagun da dirutu zerala... Aizkorak saltzen dira Tolosa'n.

—Len ere obe izango zan
Emendik eraman banu,
Eman dit amaika damu
Zure etxetik irtenak...
Aizkorak eta kirtenak...
—Gero izan zaitez ona!

—Zaude ixilik, gizona,
Eta urengo batian
Konsejubak ematian,
Begira ezazu zeñi;
Ez neri beriz eskeñi
Kirten okerik zuzentzat,
Gorde itzatzu zeretzat.
Biyar goizian, atzera,
Joangoira zure etxera,
Aizkora ta otesega,
Ezkerikasko gañera.
Ta konsejubak ordañez,
Geldi etzaitezen gañez,
Emango dizkitzut aurki
Eta goguan iduki.
Ez pentsatu kalterikan
Egingo dizutenikan
Neri zuriak bezela,
Bildurtu etzaitezela.
Martolo, gaur nere txanda,
Lenago zuria zan da.
Odolkiyak ordañetan
Izateira lur onetan .

*(Kantari)*

Nola zu jayo ziñan
Aberatsengandik
Zeroŕek ezertxore
Egiñ gabetandik,
Oparo datorkizu
Jakin gabe nondik;
Bizitzia zer lan dan
Ezdakizu oraindik.

Ikustak engañatzen
Du bat gogotikan,
Begiratutzen badu
Beti txit goitikan.
Biria ez da ondo
Neurtzen balkoitikan;
Pixkanabana ikasten da
Ibiltzen zutikan.

Konsejubak ematen
Kontu biar da txit,
Ontzat artutzen ditu
Askotatik gutxik;
Itzez buruba bete
Ta eskubak utsik,
Zeñi gustatzen zayo
Alako laguntzik

Martolo, griña txaŕik
Ez daukat zugana

Ta ez txaŕera artu
Esan dizudana;
Neretzat on ustian
Egiñ dezu dana:
Nik ez det goŕotatzen
Kulpik ez dubana.

Kontura erortzia
Nai nuke beinguan
Eta idukitzia
Betiko goguan:
Bi gizon igualikan
Ez gera mùndubaan;
Argatik sentitzen du
Noŕk bere moduban.

Zure konsejubakiñ
Buŕuka, askotan,
Naspiĺatu naiz juan dan
Iĺabete ontan;
Íñon ezin bizirik
Ez esna ta ez lotan;
Ni lertuko nitzake
Ez kantatzekotan.

Itotzeko bilduŕez
Uzteko urari,
¿Nola esango zayo
Aŕai bizkoŕari?

Ez dediña egaatu
Uso azkañari,
Eta ixildutzeko
Eñetxiñolari?

Amoraya, jatoriz
Dijua urera,
Uso ta aranuak
Odoyen aldera;
Otsua sasira ta
Satora lurpera,
Mitxirika argira
Ta auntza larera.

*Martolok*. Aizu, gizonak ere
Orelatsu gera...

*Bordak*. Torizu bostekua,
Konturatu zera.

# AMERIKATIK OSABA JOSE BERNARDORI BIALDUAK

Miĺa zortzireun larogei eta
bederatziya da aurten
ora ogeita amabi urtek
nola arapatu nauten
ni Ilbeltza'ren ogeita seyan
Erosariyo Santa Fen
nere osaba barkatu bizait
ixiĺik egon banaiz len.

Zer kontatuba pranko badaukat
ondo esango banitu
bañan guztiyak karta batian
ezin litezke kabitu
sekulan ez naiz orain aldiyan
bezin nastuba arkitu
Joxe Leoni galde bezayo
notizi danak ark ditu.

Ay, zer ote da goitikan bera
gizona bein amiltzia
beñere ez naiz ar̃ua izan
bañan au da umiltzia
ez nuen uste bazeikiala
gaizkiago ibiltzia
azken aldera er̃ematxatu
zait len nedukan iltzia.

Rosariotik Kordobaraño
Joxe anayarengana
joan ta izan naiz lau il̃abetez,
bizi nayak eramana
osasuna ta esperantza zan
aruntzian neramana
oso estutik eskapatu naiz
iya galdu nuen dana.

Nola aparte bizitu giñan
biyok denbora luzian
ay ura gure ezin asia
elkargana bildutzian ;
Joxek etzuen itzik somatzen
nik lepotik eldutzian
orduan etzan poza besterik
lengo penak galdu ziran.

Zegon tokira ni joan baño len
irten zitzaidan bidera
bur̃ni bideko estaziyuan
izan zan gure bil̃era;
elkar topo an egin genduen
ua gora ta ni bera;
etzait aztuko baña nola esan
gau artako ibil̃era.

Guk ere ainbat izan gentzake
geren alderdi plakuak;
bañan senide guziyak gera
elkar̃entzat alakuak;
Joxek botatzen zituben pozez
ginga añako malkuak
maite nola ez izan anayak
ua dan bezelakuak.

Bañan luzaro etzezakian
gau artako umoriak;
ur̃uti zauden aita Juan Pel̃o
eta gure senideak
beti bezela maite ditugun
aide ta adiskidiak
au pentzatzian il̃undu ziran
gure pozaren biriak.

Bakaŕik ez dan señalia da
pena bat agertutzia
andikan laster sortu zitzaidan
gaitz bat txaŕa ta luzia
asko du jakin nai duenian
pasa detan gurutzia
Joxe Leoni bialtzeyotan
papera irakurtzia.

Nunbait betiko erori ez ta
noizbait jaŕi nintzan txutik
bañan biziro gaizki nebilen
burutik eta petxutik ;
Mikelak eta Juan Marik gero
deitu zidaten etxetik ;
Eŕosariyon sendatu naute
an sortutako gaitzetik.

Zizurkildikan Madrila aña
bide gutxi gora bera
ni engañatzen ez banaiz daude
Kordobatikan onera
anayak Joxek lagundu zidan
kotxiarekin trenera
anparo bila etoŕi nendin
nerien aldamenera.

Penaz beteta pozaren bila
etori nintzan arunztik
nere arebak zer esan zidan
goguan daukat geroztik :
Berso ederak ordañen truka,
osabak bidaltzen dizkik
ayen bueltak jari biaituk
denak aitu ezbazaizkik.

Txit artakotzat artzen natxion
osabak bere n'oblezan
eta sentitzen dedan guztiya
nik etzekiñat nola esan
bañan zedozer jariko diñat
seguru iduki ezan
borondati palta zaidanik
iñork sinistu ez dezan.

Iduritzen zaidan batzuek
duda badabilkitela
ikusirikan nik ayei aña
kaso egin didatela
bañan ixilik egonagatik
ik ondo dakin Mikela
guk nai diyegun bañan geyago
ezin nai izen leikela.

Beron gañian izaten dira
gure izketa geyenak ;
iñola ez ditu maiz aipatuko
onenbeste nai diyenak ?
guretzat orain aundiyak dira
orko gauzik txikiyenak
au esaten det jakin dezaten
lenago etzekitenak.

Lenago ainbat aintzat artzen ez
ginduzen gauza guziyak
ainbesteraño edertzen ditu
orain ezin ikusiyak
Euskaleŕiko mendi ta zelay
ibai arkaitz ta sasiyak
beñere ezin aztu litzake
ayen tartian aziyak.

Gu geyenian gabiltza emen
esna ere ametsetan
beti pentsatzen berongan eta
Euskaleŕiko gauzetan
askok diyonez bizi gerade
txit toki aberatsetan
bañan ez dago Donostiyarik
gure luŕian bestetan.

Ameriketan ikusten ditut
zenbait euskaldun «andare»
bizi diranak beren luŕari
aitormenik eman gabe
bañan ez dute ezagutzen
oyek barkatuak daude,
Nik Donostiya eskatuko det
Paraìsora joan ta ere.

Euskal-luŕeko lore baratza
zeruko intzez bustiya
beste izar ta argi guztiyak
itzaltzeko eguzkiya;
zure berdiñik iñoiz ez dezun
biyotzeko Donostiya...
Nork du mingaña zu goitetzeko
merezi dezun guziya.

Donostiyako ziudadia
Irutxuloko uriya
Etxian zuben perlik onena
Jainkoari ixuriya;
zartzen diranen alaitzaĺia
gazte guztiyen nobiya
Zeruba zerdan ezdakit bañan
zu zera nere gloriya.

Uŕuti zaude eta zal̄a da
ni zugana iristia
onenbeste nai dizun batentzat
zer bizimodu tristia !
Alaipide bat bakaŕa daukat
am̄etsetan sinistia ;
zu ikusteko noiz nai asko det
nere begiyak istia.

Nere osaba Jose Bernardo
iritxi naiz ontaraño
ta ixiltzera nua zer esan
asko badaduzkat baño.
Gure beŕiyak zabaldu bitza
derizkiyon lekuraño
esanaz bere il̄oba zala
Pedro Mari Otaño.

# LAŔALDEKO MADALENTXO GARBIA

Prantses euskeraz itz egiten dan
Mendi tantai bin artean
Sara deritzan uri kutun bat
Dago ibartxo batean
Ango jendia ezagutzen zan
Lengo kondaira maitian
Irakuŕiyaz edo entzunaz zer
Gertatzen zan esatian
Miĺa zazpireun irurogeita
Amalaugaŕen urtian.

Eŕiyartako aingerutxo bat
Laŕaldeko Madalena ;
Zan amazazpi urte besterik
Artean etzitubena,
Guraśo batek ezagutzen dun
Alabarik laztanena.
Ikusirikan inguru aitan

Apaizik etzeguena
Konpesatziagatik sartu zan
Espana zear bařena.

Pediagatik juan da izandu
Zan Napařuako Fera'n
An konpesatu eta ondoren
Etxerako etořeran
Españiya ta Prantziya nola
Zeuden setan edo geřan
Katiaturik gelditu zuten
Bere (i) eřiko sařeran
Ta kořara ARK ZIYON EZDAKIT
Zertan gaizki egin detan.

Ařano zařen atzapařetan
Mantxa gabeko uxua
Il da lurpian an sartu zuten
Madalenatxo gaxua
Agintariyen buruzagiya
Zan guztiz eřukitsuba
Ark esan ziyon uka-ezazu
Gaur eman dezun pausua
Erantzun ziyon ez det egin nai
Nik juramentu paltsua.

Ibil̄i izan balitz bezela
Izpi edo zelatari
Sekulan gaitzik egin gabia
Aur gaxo ura iñoŕi
Agertu bear izan ziyoten
Finer buruzagiyari
Ark esan zuben berialaxen
Gil̄otiña jaso bedi
Eta lepua kendu ziyoten
Madalena gaxuari.

Jesus maiteak gurutz bidea
Igaro zuen modura
Barkaziyua ta naitasuna
Zabalduaz inguruan
Gil̄otinara igo ta iltzan
Zoragaŕizko aur ura
«Salve Regina» kantatu zuben
Ta begiratuaz Zerura
Aingerutxuak eraman zuten
Santuen bizi lekura.

# ARKIBIDEA

Ořialdea